## EGUEN SANTU EGUNEKO JAUNAREN AFARIKO MEZEA

**SARRERAKO OHARRA**

Anai-arrebok:

Arratsalde eder honetan, hemen gagoz, ikasleak afaltokian lez, Jesusen inguruan batuta. Harrituta, une gogoangarria bizi izango dogu: Jesusek bere ogia eta ardaoa izten deuskuz bere eskeintzaren zeinu eta presentzia izan daitezan betiko, eta agindu bat emoten deusku: maite egizue alkar neuk maite izan zaituedan lez!

Ospatu daigun Jaunaren Afariaren Eukaristia.

**Sarrerako abestia**




[1] Zure besotan, oi kurutzea,
hil jaku Jesus maitea.
Haren kurutze ezartzailea
neu naz, neu, pekataria.

[2] Jesukristoren odolak zaitu
Kalbarioan gorritu.
Ezerk geroztik munduan ez dau
zuk bezainbat distiratu.

## DAMU OTOITZA

Hurreratu gaitezan fedez Jesusengana; autortu daigun gure Jaun eta Salbatzaile lez eta gutaz errukitu daitela eskatu deiogun.

- Jesus Jauna: zeurea lango maitasuna eskatzen deuskuzuna: *Erruki, J.*
- Jesus Jauna, zerbitzen irakasten deuskuzuna: *Kristo, erruki.*
- Jesus Jauna: bizia geure alde emoteraino maite gaituzuna: *Erruki, Jauna.*

**AINTZA**
*(Kanpaiak eta txilinak)*

(Monitor 1)

Garizuman ez dogu Aintzarik abestu, baina gaur gogotsu eta pozik abesten dogu:



**Otoitza**

*Abadeak:* Egin daigun otoitz

Jainko Jauna, zure Seme bakarrak,
bere burua heriotzara emon aurretik,
betiko Itunaren opari barria itzi eutson Eleizeari;
haren maitasun-agiri dan Afari santua ospatzeko
batu gaituzu gaur hemen;
egizu, misterio handi hau ospatzeak
maitasunez eta bizi barriz bete gaizala.
Zure Seme Jesukristo...
—Amen.

**Irakurgaien sarrera-oharra**

Pazkoaren ospakizuna egun gogoangarria zan hebertarrentzat, belaunaldirik-belaunaldi ospatzen ebena.

**EXODO liburutik** (Ur 12, 1-8. 11-14)

Egun hareetan, honan berba egin eutsen Jaunak Moisesi eta Aaroni Egipton: «Hil hau izango dozue hil nagusia, urte guztiko lehenengoa. Esaiozue israeldarren alkarte osoari: «Hil honen hamarrean, bakoitzak abere xehe bat hartuko dau, familia eta etxe bakoitzeko bana. Abere osoa jateko familia nahiko ez bada, aldameneko bizilagunekaz alkartuko da, bakoitzak jan daikeanaren arabera zenbat lagun behar dan kontuan harturik. Aberea akats bakoa izango da, arra, urtekoa, artxoa nahiz aumea. Hilaren hamalaura arte gordeko dozue, eta egun horretan, ilunabarrean, israeldar alkarteko guztiek hilgo dabe. Gero, odola hartu eta jango dozuen etxeko atearen zutoin biak eta ateburua odolez igurtziko dozuez. Gau horretan, sutan errea jango dozue haragia, legamin bako ogiz eta bedar mingotsez lagundurik.
Honan jango dozue: gerria loturik, oinetakoak jantzirik eta makila eskuan, abiatzeko prest; presaka jango dozue, Jaunaren Pazkoa da-eta, hau da, Jaunaren igarotea. Gau horretan Egipto osoan zehar igaroko naz, eta hil egingo ditut Egiptoko lehen ume guztiak, bai gizakienak eta bai abereenak, eta neure epaia emongo deutset Egiptoko jainkoei. Ala Ni Jauna! Odola izango dozue ezaugarri zagozen etxeetan. Odola ikustean, aurrera igaroko naz; holan, Nik egiptoarrak jotean, izurriak ez zaitue zuek hondatuko.
Egun hau gogoangarri izango dozue eta jai nagusiz ospatuko dozue Jaunaren ohorez. Jai honen ospakizuna betiko lege izango dozue belaunez belaun». ***Jaunak esana***

## Erantzun Salmoa (Ps 115)




Jaunari zer deutsot bihurtuko
egin deustazan guztiekaitik?
Salbamen-edontzia dot hartuko,
eta Jaunaren izena deituko.

Jaunaren begietan balio handikoa
haren zintzoen herioa.
Zure neskamearen semea, zure morroi nozu, Jauna,
askatu dozuz nire kateak.

Eskainiko deutsut gores-oparia,
deituko dot, Jauna, zure izena.
Emongo deutsodaz Jaunari zin egindakoak,
herri guztia begira dagoela.

## San Paulo Apostoluak Korintoarrei (1Kor 11, 23-26)

Senideok: Jaunagandik hartuta daukat nik, neuk zuoi emon deutsuedan hau: Jesus Jaunak, saltzekoa zan gau haretan, ogia hartu eta, esker-otoitza eginda, zatitu egin ebala, esanez: "Hau neure gorputza da, zuentzat emoten dana. Egizue hau neure gomutagarri."

Bardin egin eban kalizagaz ere, afal ostean, berbok esanez: "Kaliza hau itun barria da nire odolean; egizue hau, edaten dozuen bakotxean, neure gomutagarri." Beraz, ogi honetatik jaten, eta kaliza honetatik edaten dozuen bakotxean, Jaunaren heriotzea iragarten dozue, Bera etorri arte.

**Jaunak esana**.

## Ebanjelio aurrean

**R/. Alkar maite dagigula, zuk maitatu bezala.**



## † Jesukristoren ebanjelioa san Joanen liburutik Jn 13, 1-15

Pazko-jai aurrean, ikusi eban Jesusek etorri jakola mundu honetatik bere Aitagana joateko ordua, eta munduan egozan beretarrak maite izanik, azkeneraino maitatu zituan.

Afaltzen egozan. Ordurako arerioak buruan sartuta eukotson Judasi, Simon Iskarioteren semeari, Jesusen saldukeria egitea. Jesusek jakinik Aitak gauza guztiak eskura emon eutsozala, Jaungoikoagandik etorrela, eta Jaungoikoagana joiala, jagi zan mahaitik, erantzi eban soin-gainekoa, eta esku-zapi bat harturik, bere gerrian lotu eban. Gero, ontzi bat urez bete, eta ikasleei oinak garbitzen hasi jaken, eta gerrian eukan esku-zapiaz sikatzen.

Pedrogana heldu zanean, honek esan eutson: «Jauna, zuk niri oinak garbitu?» Eta Jesusek: «Zuk ez dakizu ni orain egiten nabilana; geroago ulertuko dozu».

Pedrok: «Zuk ez deustazu niri behin ere oinik garbituko». Eta Jesusek: «Garbitzen ez bazaitut, ez dozu zerikusirik nigaz».

Simon Pedrok orduan: «Jauna, ez oinak bakarrik, baita eskuak eta burua ere». Jesusek erantzun eutson: «Garbitu bat hartu dauanak ez dauka oinak garbitu beharra baino, beste dana garbi dago-ta. Zuok ere garbi zagoze, baina ez guztiok». Baekian nork salduko eban, eta horregaitik esan eban: «Ez zagoze garbi guztiok».

Oinak garbitu eutsezanean, soin-gainekoa hartu, eta barriro mahaian jesarrita, esan eutsen: «Badakizue zer egin deutsuedan? Zuek “Maisu” eta “Jaun” esaten deustazue; eta ondo esana, horixe naz-eta. Maisu eta Jaun izanik, oinak garbitu badeutsuedaz, zuok ere bardin garbitu behar deutsozuez oinak alkarri; jarraibidea emon deutsuet, Nik zuoi egin deutsuedana, zuok ere egin dagizuen».

**Jaunak esana**

***Homilia (*Ez dago «Sinisten dot»ik)**

***(Homiliaren ostean,***
***OINEN GARBITZEA egiten bada)***

**Oharra oinen garbitzeari**

Orain, batzarrean buru dogun abadeak Jesusen zeinua egingo dau oinak garbitzean. Gutako bakoitzak eta Eliza osoak, Jesusen misino bera dogulako: neurri barik maitatu, neurri barik zerbitzatu. Aurten **XXXXXXX**en egoerara gura dogu hurreratu...

**Abestiak**

**—Maitasuna non, han Jainkoa. Maitatu daigun lagun hurkoa.**




*2 Jauna, zuk niri oinak garbitu? Jesusek erantzun eutson: garbitzen ez bazaitut, ez dozu zerikusirik nirekin.*

*4 Honetan ezagutuko dabe guztiek nire ikasle zareena: alkar maite badozue.*

*6 Iraun begie zuengan sinismenak, itxaropenak, maitasunak, hiru honeek; baina hiruretan, maitasuna da nagusi.*

**JAINKO HERRIAREN OTOITZA**

Maitasunaren eta eskeintzaren egunean, munduari samurtasun handiagoz begiratzen deutsogu eta gizateri osoaren beharrizan eta itxaropenak aurkezten deutsoguz Aitari.

- Bakearen itxaropenean bizi dan gure Herri honen alde: Bakea Jainkoaren grazia lez hartzeko eta lantzeko gertatu daiten, parkamena ta berradiskidetzea bideratuz. *Eskatu deiogun Jaunari.*

- Gure Elizbarrutiaren alde: parrokia guztiak alkartasunean jokatu daigun eta Ebanjelizatze Egitasmoan sendo lan egin daigun. *Eskatu deiogun Jaunari.*

- Herri pobretuen alde: eurak dira Gizadiaren zauri gorriak, entzun nahi ez dogun garraxi profetikoa. *Eskatu deiogun Jaunari.*

- Eukaristia presiditzera deituak diran abadeen alde, eta elizlanetan dihardauen guztien alde. *Eskatu deiogun Jaunari.*

- Eguen Santu honetan, eskatu daigun gure maitasun eta laguntza gehien behar dabenen alde: txiroen, gaixoen, bakarrik eta baztartuta dagozanen alde, eta euren ohe ondoan edo laguntzan hainbeste sufritzen daben laguntzaile ta zaintzaileen alde. *Eskatu deiogun Jaunari.*

- Gure Pastoral Barrutiko parrokien eta eliztarren alde; euretako ongileen alde; eta Jesusen Afaria ospatzeko alkartu garenon alde: deitu gaituen Jesusen maitasunaz jardun daigun aurrerantzean. *Eskatu deiogun Jaunari.*

† Onartu, Aita, zure Semearen ikasleen alkarteak zuzentzen deutsun otoitza, eta emoiguzu fedez eskatzen deutsuguna. Jesukristo gure Jaunaren bitartez.
—Amen.

## Olioen eta eskintzarien aurkezpena

**Oharra**

Sakramentuen, hau da, Jesukristok gugan egiten dituan ekintzen ospakizunean, olioak leku nabarmena dau. Olioa indar eta ongizatearen zeinua da.

Antzina, euren misinoaren hasierea adierazoteko, erregeak eta profetak olio lurrinduaz igurzten ebezan. Eta Jesusi Mesias eta Kristo esaten jako, eta horrek "Gantzutua" esan gura dau.

Urtero, Eguen Santuko Krisma-Mezan, gotzainak Krisma konsagratzen dau bateoan, sendotzan eta abadegintzan erabilteko, eta gaixoen olioa eta kristaugaien olioa bedeinkatzen dau.

Horixe egin da goizez Katedralean, eta orain guk olio horreek jasotzen doguz, gure alkartean, urtean zehar, sakramentuak ospatzeko.

*Olioak ekarriko dira kantu bat abesten dan bitartean.*

*Lehenengo gaixoen olioa aurkeztuko da eta abadeak esango dau:*

**A/** Bedeinkatzen zaitugu, Jauna, gaixoen olioagaitik eta sufritzen dihardduen gure anai-arrebak babestu daizala eskatzen deutsugu.

**E/** Bedeinkatua Zu, Jauna, orain eta beti.

*Kristaugaien olioa aurkezten da*

**A/** Bedeinkatzen zaitugu, Jauna, kristaugaien olioagaitik; bateoan eurokin igurtziak izango diranek Ebanjelioaren ezagutzan hasi daitezala eta kristau bizitzan gogotsu jardun daiela.

**E/** Bedeinkatua Zu, Jauna, orain eta beti.

*Krisma santua aurkezten da*

**A/** Bedeinkatzen zaitugu, Jauna, krisma santuagaitik; bateoan, sendotzan eta abadegintzan bere zeinuaz markatuak izango diranak Espirituaren dohainen oparotasuna jaso dagiela, holan Elizea hazi eta zure Seme Jesukristoren osotasunera heldu daiten.

**E/** Bedeinkatua Zu, Jauna, orain eta beti.

*Olioak bistan itziko dira*



*Ondoren, ogia, ardaoa, ura eta batutako dirua aurkeztuko dira.*

Oparigaien gaineko otoitza

Egizu, Jauna,
zintzo hurreratu gaitezala sakramentu honetara;
opari hau gomutagarri lez ospatzen dogun bakotxean
geure erospena egiten da-ta.
Jesukristo...
—Amen.

Jauna zuekin ............................... Eta zure Espirituarekin
Gora bihotzak ................................... Jaunagan daukaguz
Eskerrak Jaungoiko gure Jaunari ....... Egoki da eta zuzen

Egoki da, bai, eta zuzen
non-nahi eta beti zuri eskerrak emotea,
Jauna, Aita guztiz santu,
Jaungoiko ahalguztidun betiko horri,
Jesukristo gure Jaunaren bitartez.

Berau dogu egiazko eta betiko abadea:
behin-ta-betiko eskeintza barria jarri nahiez,
bere burua eskeini eutsun opari salbagarri,
eta guri agindu euskun opari hau bere oroigarri eskeintzeko;

horrela, guretzat eskeinitako gorputza jatean,
indarrez beteten gara;
eta guretzat isuritako odola edatean,
gure pekatuetatik garbitzen.

Horregaitik, aingeru eta goi-aingeruekin,
eta zeruko talde guztiekin,
zure aintzari goratzarre hau
beti ta beti abesten deutsogu.

Santu, santu, santua...

*(II. Eukaristi otoitza nahiaho bada, hurren dator)*

## (I. Eukaristi otoitza, edo erromarra)

Zuri, beraz, Aita guztiz ona,
zure Seme Jesukristo gure Jaunaren bitartez,
apalik eskatzen deutsugu,

onartu ta † bedeinkatu daizuzala eskeintza garbiok.



Zure Eliza santu Katolikuaren alde
eskeintzen deutsuguz lehenengo:
emoiozuz, mundu zabalean, bakea ta batasuna,
eta zaindu eizu bide zuzenean,
zure zerbitzari Franzisko, gure Aita Santuagaz,
**Mario**, gure Artzainagaz,
eta Apostoluen siniste katolikua
osorik zaintzen daben beste guztiekaz.

Gogoan izan, Jauna,
guk gogoan doguzan... zure seme-alabak,
eta hemen diran guztiak:
ezagutzen dozu honeen sinisten zintzoa.

Danon izenean eskeintzen deutsugu
gorespenezko opari hau,
eta eurek ere eskeintzen deutsue
bai eurentzat, bai euren artekoentzat,
pekatuen parkamenerako
eta itxaroten daben gorputz-arimen osasunerako;
horretarako egiten deutsuez euren otoitzak
Zuri, betiko Jaungoiko bizi ta egiazko horri.

Guztiok bat eginik, **egun santua** ospatzen dogu,
*Jesukristo gure Jauna gugaitik saldua izan zanekoa;*
eta aitatzen eta goresten doguz:
lehenengo, Andra Maria beti Birjina dohatsua,
gure Jaun eta Jaungoiko Jesukristoren Ama,
eta beronen senar Jose santua,
baita zure apostolu ta martiri dohatsu:
Pedro eta Paulo, Andres,
eta zure santu guztiak;
euron irabaziz eta otoitzez emoiguzu,
non-nahi eta beti, zure indarra eta laguntza.

Hona hemen, Jauna, zure zerbitzarien
eta zure herri guztiaren eskeintza:
*gaur egiten deutsugu,*
*Jesukristo gure Jaunak*
*bere gorputz-odolen misterioa*
*ikasleei ospatzeko emon eutsen egun honetan.*

*

Onartu eizu beraz;
eratu zure bakean gure egunak,
betiko heriotzatik atara,
eta hartu gaizuz zure aukeratuen artean.

*(eta eskuak eskeintzaren gainean jarriz...)*

Bedeinkatu, Jauna, eskeintza hau;
eta zuretzat on eta atsegingarri egizu,
eta guretzat izan dedila
zure Seme maite Jesukristo gure Jaunaren † gorputz eta odol.

Berak, *gu eta gizon-emakume guztiak salbatzeko,*
hil bezperan *—gaurko egunez—*,
bere esku santuetan ogia hartu,
eta begiak zerura jasorik,
bere Aita Jaungoiko ahalguztidun horrengana,
zuri eskerrak emonez, bedeinkatu eban,
zatitu eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE TA JAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE GORPUTZA DA-TA
ZUENTZAT EMONGO DANA.

Afal ondoan, bardin,
bere esku santuetan kaliza baliotsu hau harturik,
barriz ere zuri eskerrak emonez, bedeinkatu eban
eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE TA EDAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE ODOLAREN KALIZA DA-TA,
ITUN BARRI ETA BETIKOAREN ODOLA,
ZUENTZAT ETA GUZTIENTZAT
PEKATUAK PARKATZEKO ISURIKO DANA.
EGIZUE HAU NEURE OROIGARRI.

**Sagara-goralpena**




Horregaitik, Jauna,
gogoratuz guk, zure zerbitzariok,
eta zure herri santu honek,
zure Seme Jesukristo gure Jaunaren Nekaldi dohatsua,
hilen artetik biztea, eta zeruratze miragarria,
eskeintzen deutsugu zuri, Jaungoiko handi horri
zeuk emondako doaietatik,
opari garbia, opari santua, opari errugabea,
betiko biziaren ogi santua
eta betiko zorionaren kaliza.

Hartu eizuz begi on eta argiz:
halan hartu zenduzan
Abel zure zerbitzari zintzoaren doaiak,
eta Abrahan gure Aitaren oparia,
eta Melkisedek zure abade nagusiaren eskeintza santu ta errugabea.

Apalik eskatzen deutsugu, Jaungoiko ahalguztiduna:
zure aingeru santuak eroan daizala zeruko altarara,
Jaun handi horren aurrera;
altara honetatik zure Semearen gorputz-odol santuak
hartzen doguzan guztiok
zeruko ondasunez eta graziaz bete gaitezan.

*Gogoan izan, Jauna,*
*sinistearen ezaugarriagaz joan*
*eta orain bakezko lotan diran zure seme-alabak:* ***I...***

Euroi eta Kristogan atseden daben guztiei
emon, Jauna, zeruan poza, argia ta bakea.

Geuri ere,
zure bihotz onean sinistea dogun pekatarioi,
iguzu leku zure apostolu eta martiri santuen artean:
Joan Bateatzailea, Esteban, Matias eta Bernabe,
eta zure santu guztien artean;
iguzu ez guk mereziari begiratuz,
Zu parkatzaile zaralako baino.

Jesukristo gure Jaunaren bitartez.

Beronen bitartez, Jauna,
beti gauza on guztiak egiten dozuz,
santutzen, biziazoten, bedeinkatzen ta guri emoten.

Honen bitartez, honekin eta honengan,
Zuri, Aita Jaungoiko ahalguztidun horri,
Espiritu santuarekin batean,
ospe eta aintza guztia gizaldi eta gizaldi guztietan.

—**Amen**.

## Eukaristi-Otoitza II (Abadeak)

Santu zara, bai, Jauna,
eta santutasun guztiaren iturri.
Santu egizuz, bada, ogi eta ardau honeik,
zeure Espiritua isuriz,
Jesukristo gure Jaunaren
Gorputz † eta Odol egin daitezan guretzat.

Berak, saldu ebenean,
eta bere gogoz kurutzera joiala,
ogia hartu eta eskerrak emonez,
zatitu eban, eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

**Hartu eizue ta jan guztiok hontatik:**
**hau neure gorputza da-ta,**
**zuentzat emongo dana.**

Afal-ondoan bardin, kaliza harturik,
barriz ere eskerrak emonez,
bere ikasleei emon eutsen, esanez:

**Hartu eizue ta edan guztiok hontatik:**
**hau neure odolaren kaliza da-ta,**
**itun barri ta betikoaren odola,**
**zuentzat eta guztientzat**
**pekatuak parkatzeko isuriko dana.**
**Egizue hau neure oroigarri...**

***V./ Hau da sinismenaren misterioa.***

*R./ Hil eta biztu zarala, Jauna,*
*zu barriz etorri arte*
*hau dogu hau Barri Ona.*

Horregaitik, Jauna,
zure Semearen heriotzea ta biztuerea gogoratuaz,
biziaren ogia ta salbamenaren kaliza
eskeintzen deutsuguz,
zuri eskerrak emonaz
altaran zure zerbitzari onartu gaituzulako.

Eta apalik eskatzen deutsugu,
Kristoren gorputz-odolak hartzen ditugunok
Espiritu Santuak bat egin gaizala.

Gogoan izan, Jauna,
mundu guztian zabaldurik dagoen zure Elizea;
eroaizu maitasun osora,
**Franzisko**, gure aita santuarekin,
**Mario** gure artzainekin,
eta eliz -gizon -emakume guztiekin batean.

Gogoan izan, Jauna, gaur mundu honetatik
zeugana eroan dozun **I.**, zure zerbitzaria,
heriotzan zure Semearekin bat egin dan hau
biztueran ere berarekin bat izan dadila.

Gogoan izan, Jauna,
bizteko itxaropenean joan diren: **I.**,**I.**... (egunekoak ),
eta gure etxeko, senide eta hildako guztiak:
hartu egizuz zure aurpegiaren argitan.

Erruki zakiguz, arren, guk guztiok
betiko bizitzea jaritsi dagigun,
Jaungoikoaren Ama Maria doatsuarekin,
Apostolu santuekin, eta gizaldi guztietan
zure adiskide izan diren santuekin;
eurekin batean goratu zaiguzan.
Jesukristo zure Semearen bitartez.

Honen bitartez, honekin eta honengan
zuri, Aita, Jaungoiko ahalguztidun horri
Espiritu Santuarekin batean
ospe ta aintza guztia
gizaldi ta gizaldietan.
— Amen.

---

† Salbatzaileak agindu eta irakatsiari jarraituz, bildur barik esan dagigun:

**Gure Aita**...

† Atara gagizuz, Jauna, gatx guztietatik; emoiguzu bakea gure egunotan, zure errukiari esker pekatutik garbi bizi izan gaitezan eta estualdietan sendo. Betiko zorionaren itxaropenean Jesukristo gure Salbatzailea noiz etorriko dan zain gagozela.

- **Zeurea dozu erregetza,**
**zeureak ospe ta indarra orain eta beti**.

† Jesukristo gure Jauna zeuk esana da Apostoluei: Bakea izten deutsuet, neure bakea emoten. Begira zure Elizearen sinismenari eta ez gure pekatuei eta zeure gogoa danez, emoiozu Elizeari bakea, emon batasuna, errege bizi zarata. Gizaldi ta gizaldietan.
—Amen.



† Jaunaren bakea beti zuekin.
—**Eta zure espirituarekin.**
† Emoiozue bakea alkarri

† Hona hemen Jaungoikoaren Bildotsa;
hona munduko pekatua kentzen dauana.
Zoriontsuak honen mahaira deituak.

—*Jauna, ni ez naz inor*
*zu nire etxean sartzeko,*
*baina esaizu hitz bat eta osatuko naz.*

**Jaunartzean**

Jesus maitea zan azken Afarian
bera emon nahirik ardao ta ogian.
Guretzat zalarik hilteko aurrean
maitasunak eukan bihotza menpen.
*Gurtu daigun beti Jesus Jainko Jauna,*
*sakramentu honetan gurekin dagoena.*

Apostoluei minez esan deutse:
«Ni gaur saldua naiz, bihar hilgo nabe.
Aitarenganako denpora jat bete,
hona orain zenbat zaituedan maite.»

**JAUNARTZE OSTEKO OTOITZA**

*Egin daigun otoitz!*
Jainko ahalguztiduna,
hemen ospatu dogun zure Semearen afarian
barriztatu gaituzu;
egizu, egun baten,
haren erreinuko mahaian asetu gaitezala.
Errege bizi da-ta, gizaldi ta gizaldietan.
—Amen.

**Oharrak**

—Gure Jauna *Gorde-lekura* eroango dogu orain. Ohitureari jarraituz, esker-otoitza egin geike bere aurrean. [Deituta zagoze, **ordu santura**; 10etan izango da].

—Bihar, arratsaldeko XXXXXXXtan izango dogu *Jaunaren Nekaldiko* elizkizuna. Bihar *barau eta haragi izte* eguna dogu: gogoan izan.

**Oharra sakramentu santua gordean itzi aurretik**

Jesus, Biziaren ogia, kristau alkartean geratzen da. Hortik komulgatuko dogu bihar. Gaur, sekula baino gehiago, bere erregalua eskertzen dogu, sakramentuan gure artean dagoalako gurtzen dogu.

**Elizbirarako abestia**

**(Kandeladunek laguntzen deutsoe, eta intzentsuak)**

Azken Afari ezkeroz, Jauna,
gure janari zu zera.
Agindu gozoz lotu gintuzun
zure gorputza hartzera.
Ogia bide gara iristen
gure gorputzak lotzera,
zugatz-gerria adarrarekin
bat egiten dan antzera.

Batasun honek eskatutzen dau
animak ere bat egin;
buru-bihotzez bizi gaitezan
bat eginikan zurekin.
Zaran osoa eskeintzen zara
izanez gure atsegin.
Zuk jarritako maite-legean
ez genduko nahi hutsegin.

Etsaiak bere tentaldietan
ez dau inolaz etsiko;
eragozpenak kendu eiguzuz,
guk ez zaitugu utziko.
Batasun honek iraun daiala
gure bizitza guziko,
azken orduan sartu artean
zure etxean betiko.

**Gordelekuan abesteko**



Hor zagoz, Jesus, altarean,
gorde nahi zaitut bihotzean.

Zeruetako Jaun handia
eginik gure janaria.
O maitetasun ugaria,
gizonarentzat gehiegia (bir).

***Bedeinkapena emon ondoren***

**ZOAZE JAUNAREN BAKEAN**

Eskerrak Jainkoari

**KONTUAN HARTU-BEHARREKO GAUZAK edo Arauak**

Oteuntokiak hutsik egon behar dau.
Nahikoa ogi konsagratu; Hostia handi bi jarri.
Abadea jantzi zuriz.
Kanpaiak «Aintza»rako, edo txilinak
Mahaitxo baten gertatu Oleoak eta eskeintza
Nortzuk izango diren ekarleak izentatu
Intzentsua erabili
Kandelak eroateko gizonezko bi
Gordelekuko kandelak Jaunartze ondoren biztu
Abestiak zuzentzeko, pantailaratzeko...

## BARIKU SANTUA JAUNAREN NEKALDIAN

***(Aldarea maindira barik dago...)***

**Sarrerako oharra**

Anai-arrebok:

Jesus, gure Maisu eta Jauna, atxilotu, torturatu eta heriotzara kondenatu dabe. Zergaitik? Neurri barik maitatu daualako; Jaungoikoa Aita dogula eta txiroak aparteko eran maite dauzala iragarri ebalako; bihotza eta bizitza aldatzeko deia egin ebalako; gizakia zapaltzen daben egoera guztien aurka burrukatu ebalako. Bere sasoiko agintari zibil eta politikoek ez dabe onartzen bere berba egiteko eta bizi izateko modua. Eta lagunek ihes egin eta bakarrik izten dabe...

**Abadearen sarrerea, isilik gagozala**

**Otoitzaldia belaunikatuta**

**Bilketa otoitza**

(*Zuzenean. Ez da esaten* egin daigun otoitz)

Jainko Jauna,
Jesukristo gure Jaunaren nekaldiaz ezereztu zendun
lehenengo pekatuak gizaki guztiengana
zabaldutako heriotzea;
egin gaizuz zure Semearen irudiko,
izatez Adanen antzeko garenok
zure graziaz Jesukristoren antzeko izan gaitezan.
Errege bizi da-ta gizaldi ta gizaldietan. —Amen.

## HITZAREN LITURGIA

**Oharra irakurgaiei**

Entzun dagigun, isilean hausnartuz, Jainkoaren Morroiaren abesti hunkigarria: Jesukristo bera ikusi daikegu bere nekaldian.

**Isaias Profetearen liburutik** *(Is 52, 13—53, 12)*

Hara, nire zerbitzariak arrakastea lortuko dau;
goratua, gorengo mailara jasoa izango da.

Asko eta asko ikaratu ziran haretaz,
hain eban-eta giza itxurea ere galdua
gizakia zanik ere ez zirudian-eta;
era berean, herri asko harrituko dira,
erregeak haren aurrean mutu geldituko,
inoiz kontatu ez jakena ikusiko dabe-eta,
inoiz entzun ez ebena entzungo.
Nork sinistu dau gure mezua?
Nori agertu jako Jaunaren ahalmena?
Jaunaren zerbitzaria zuzterrak lur lehorrean dituan
kimua lez hazi zan haren aurrean;
ez eban duintasunik, ez edertasunik,
ez gure begientzat itxura erakargarririk;
mespretxatua eta jenteak baztertua,
oinaze-gizona, sufritzen ikasia;
ez ikusiarena egiten jakona lez
mespretxatu egin genduan
eta aintzakotzat hartu ez.
Baina gure gaitzak bere gain hartu zituan harek
eta gure oinazeak eroan.
Guk, barriz, zigortutzat geunkan,
Jainkoak zauritu eta atsekabetutzat.
Baina gure pekatuakaitik zulatu eben,
gure erruakaitik txikitu.
Haren gainera jausi zan
guretzat salbagarri dan zigorra:
haren zauriek osatu gaitue.
Ardiak lez genbilzan galdurik,
bakoitza geure bidetik,
eta Jaunak haren gainera bota eban
gu guztion errua.
Txarto erabili eben,
baina bera apaldu egin zan,
ahorik zabaldu barik.
Hiltera daroen bildotsak lez,
ule-moztaileen aurrean isilik dagoan ardiak lez,
ez eban ahorik zabaldu.
Eragozpen eta zuzenbide barik eroan eben;
baina haren zoria nori ardura?
Bizidunen lurretik atara eben,
nire herriaren pekatuagaitik jota.
Gaiztoen artean emon eutsoen lur,
gaizkileekin batera hilobiratu,

nahiz eta berak bidebakokeriarik ez egin
eta haren ahotan maltzurkeriarik ez izan.
Jaunak oinazez josi gura izan eban.
Pekatuen ordainetan bizia emon ebala,
izango ditu ondorengoak
eta bizitza luzea,
eta haren bitartez Jaunaren guraria burutuko da.
Hainbat neke jasan ondoren,
argia ikusiko dau eta asea izango da.
Bere ezagutzaren bidez,
nire zerbitzari zuzenak
asko egingo ditu zuzen,
hareen gaiztakeriak bere gain hartu ebazan-eta.
Horregaitik, jentetza ugaria emongo deutsat ordainetan,
gizataldeak izango ditu garaipen-sari,
bere burua heriotzara emon ebalako,
eta pekatarien kidetzat hartu ebelako.
Guztien pekatuak bere gain hartu ebazan
eta pekatarien alde erregutu eban.

*Jaunak esana*

## Erantzun Salmoa

**R/.** *Zure eskuetan dot bizia; askatu naizu, Jaun handia*




Zugaz batzen naz, Jauna, ez nadila behin ere lotsatu:
zeure zuzentasunez onik nagizu atara.
Zure eskuetan izten dot neure arnasa,
askatuko nozu, Jauna, Jainko leiala. **R/.**

Arerio guztiei barregarri najake, auzoei irrigarri, ezagunei izugarri:
kalean ikusi eta alde dagie nigandik.
Hildakoa lez nabe bihotzean ahaztu,
ontzi baztertua lez naz geratu. **R/.**

Nik, ostera, Jauna, uste on Zugan dot,
«Zu zara nire Jainko», dinotsut.
Zure eskuan nire joan-etorriak,
atara nagizu arerioen eskutik, aurrean narabilenakandik. **R/.**

Aurpegi argia erakutsi morroi honi,
salbatu nagizu zeure errukiaz.
Bizkortu zaiteze, izan bihotz,
Jaunagan uste on dozuen guztiok. **R/.**

## Bigarren irakurgaia

**Hebrearrei egindako epistolatik** (Heb 4, 14-16; 5, 7-9)

Senideok: Gure abade nagusi handia, Jesus, Jainkoaren Semea, zeruetan sartua dogun ezkero, eutsi deiogun autortzen dogun sinismenari; izan ere, gure abade nagusia ez da gure ahuleriaz erruki ez daitekeen norbait, bera ere, gu lez, gauza guztietan probatua izan da-eta, pekatuan izan ezik. Hurreratu gaitezan, bada, konfiantza osoz Jainkoaren graziaren tronura, errukia lortu eta premialdian laguntza izan dagigun.
Kristok, bere giza bizitzaldian, deadar handiz eta negarrez egin eutsan otoitz eta erregu heriotzatik askatu eikean Jainkoari, eta entzun egin eutsan bere begiruneagaitik. Eta Semea izanik ere, oinazearen oinazez ikasi eban esaneko izaten; holan, bere betera heldurik, betiko salbamenaren iturri bihurtu zan beraren esaneko diran guztientzat.

## Nekaldiaren iragarpena

**Jn 18, 1—19, 42**

**† Jauna zuekin**
**— Eta zure espirituarekin**

**† Jesukristo gure Jaunaren Nekaldia San Joanen liburutik.**
**— Aintza zuri, Jauna.**

*Getsemanin, Jesus hartu eta lotu egiten dabe.*

**K** Aldi haretan, Jesus eta ikasleak Zedron errekea igaro eta beste aldean egoan baratze batera sartu ziran. Judasek ere, Jesus salduko ebanak, ezagutzen eban leku ha, sarritan batua zan-eta Jesus han bere ikasleekin.

Judas, beraz, tenpluko gudari-taldea eta abadeburu eta fariseuen guardiak harturik, hara joan zan. Zuzi, argiontzi eta armez horniturik joiazan. Jesusek, ondo ekien-eta jazoko jakon guztia, bidera urten eta esan eutsen:
**S** «Noren bila zatoze?»

**K** Hareek erantzun:

**S** «Jesus Nazaretarraren bila».

**K** Harek orduan:

† «Neu naz».

**K** Han zan guardiekin batera Judas saltzailea ere. Jesusek «Neu naz» esan eutsenean, atzeraka hasi eta lurrera jausi ziran. Barriro itaundu eutsen:

† «Noren bila zatoze?»

**K** Hareek erantzun:

**S** «Jesus Nazaretarraren bila».

**K** Eta Jesusek:

† «Esan deutsuet Neu nazala. Nire bila bazatoze, itzi honeei joaten».

**K** Holan bete zan Jesusek berak esandakoa: «Emon deustazuzenetatik ez dot bat ere galdu».
Orduan, Simon Pedrok, aldean eroian ezpatea atara, abade nagusiaren morroia jo eta eskumako belarria ebagi eutsan. Morroiak Malko eban izena. Jesusek esan eutsan Pedrori:

† «Bihurtu ezpatea bere zorrora. Ez al dot, bada, edan behar Aitak emon eustan kaliza?»

**HEMEN JESARRI EGIN DAITEKEZ**

*Jesus Anasenera eroan eben lehenengo.*

**K** Gudari-taldeak beronen buruzagiagaz eta judu-agintarien guardiek Jesus preso hartu eta, loturik, Anasen etxera eroan eben lehenengo; urte haretako abade nagusi Kaifasen aitaginarreba zan Anas hau. (Kaifas zan juduei aholku hau emon eutsena: «Hobe da gizon bat herriagaitik hiltea»).
Simon Pedro eta beste ikasle bat Jesusen atzetik joan ziran. Beste ikaslea abade nagusiaren ezaguna zan eta, Jesusegaz batera, abade nagusiaren jauregiko patiora sartu zan; Pedro, barriz, kanpoan gelditu zan, ate ondoan. Urten eban orduan abade nagusiaren ezaguna zan ikasleak eta, atezainari berba egin ondoren, Pedro barrura sartuazo eban. Atezain egoan neskameak esan eutsan Pedrori:
**S** «Zu ere ez ete zara, gero, gizon horren ikasleetakoa?»

**K** Pedrok erantzun:

**S** «Ez, ez naz».

**K** Morroiek eta guardiek sua iziotu eta berotzen ziharduen, hotz egiten eban-eta. Pedro ere hareekaz egoan, berotzen. Abade nagusiak bere ikasleez eta bere irakatsiaz itaundu eutsan Jesusi. Jesusek erantzun eutsan:

† «Ageri-agerian berba egin izan deutsat Nik mundu guztiari; sinagogan eta tenpluan irakatsi izan dot beti, judu guztiak batzen diran lekuan, eta ezer ere ez dot ezkutuan esan. Zergaitik itauntzen deustazu Niri? Itaundu nire entzuleei eta emongo deutsue esan dodanaren barri».

**K** Hori esan ebaneko, han egoan guardia batek matrailako bat emon eutsan, esanez:

**S** «Holan erantzuten al deutsazu abade nagusiari?»

**K** Jesusek erantzun eutsan:

† «Txarto berba egin badot, esan zertan; baina ondo berba egin badot, zergaitik joten nozu?»

**K** Orduan, Anasek Kaifas abade nagusiagana bialdu eban Jesus lotuta.

*Zu ere ez al zara horren ikasleetakoa? Ez! Ni ez!*

Bitartean, han egoan Simon Pedro berotzen, eta esan eutsoen:

**S** «Zu ere ez al zara horren ikasleetakoa?»

**K** Pedrok ukatu egin eban, esanez:

**S** «Ez, ez naz».

**K** Abade nagusiaren morroietako batek, Pedrok belarria ebagi eutsanaren senideak, esan eutsan:

**S** «Ez ete zaitut, bada, neuk ikusi Beragaz baratzean?»

**K** Pedrok barriro ere ukatu egin eban, eta oilarrak jo eban bat-batean.

*Nire erregetza ez da mundu honetakoa.*

Kaifasen etxetik Gobernadorearen jauregira eroan eben Jesus. Goizaldea zan. Juduek ez ziran jauregian sartu, euren buruak ez kutsatzeko, bestela ezin izango eben-eta pazko-afarian parte hartu. Pilatok kanpora urten eta itaundu eutsen:

**S** «Zertaz salatzen dozue gizon hau?»

**K** Hareek erantzun eutsoen:

**S** «Gaizkilea ez balitz, ez geuskizu ekarriko».

**K** Pilatok esan eutsen:

**S** «Eroan zeuek eta epaitu zeuen legearen arabera».

**K** Juduek orduan:

**S** «Guri ez jaku zilegi inor heriotzara kondenatzea».

**K** Holan beteko zan Jesusek esandakoa, zein heriotzaz hilgo zan adierazo ebanean. Pilato jauregira sartu zan barriro eta, Jesusi deiturik, itaundu eutsan:

**S** «Juduen erregea al zara zu?»

**K** Jesusek erantzun:

† «Zeure buruz itauntzen al deustazu hori ala besteek esan deutsue hori Nitaz?»

**K** Pilatok esan eutsan:

**S** «Judua ete naz, bada, ni? Zure herritarrek eta abadeburuek ekarri zaitue nigana. Zer egin dozu?»

**K** Jesusek erantzun:

† «Nire erregetza ez da mundu honetakoa. Nire erregetza mundu honetakoa balitz, nire jenteak borroka egingo leukean, Ni juduen eskuetan ez jausteko. Nire erregetza, ostera, ez da hemengoa».

**K** Orduan, Pilatok esan eutsan:

**S** «Beraz, errege zara Zu?»

**K** Jesusek erantzun eutsan:

† «Bai, errege naz, zeuk dinozun lez. Horretarakoxe jaio eta etorri naz mundura: egiaren testigantza egiteko. Egiarena danak entzuten dau nire ahotsa».

**K** Pilatok itaundu eutsan:

**S** «Zer da egia?»

**K** Hori esanik, barriro ere juduekana urten eta esan eutsen:

**S** «Nik ez deutsat errurik aurkitzen gizon honi. Baina badozue ohitura nik Pazko-jaietan preso bat askatzekoa: Nahi al dozue juduen erregea askatzea?»

**K** Hareek, barriz, deadarka:

**S** «Hori ez! Askatu Barrabas!»

**K** Barrabas hau bidelapurra zan.

*Agur, juduen errege!*

Pilatok, orduan, Jesus zigortzeko agindu eban. Gudariek, arantzazko koroa eginik, buruan ezarri eutsoen eta purpurazko mantua bota eutsoen gainera. Eta, hurreraturik, esaten eutsoen:

**S** «Agur, juduen errege!»

**K** Eta matrailakoka erabilen. Urten eban barriro ere Pilatok eta esan eutsen juduei:

**S** «Hara, kanpora dakartsuet, jakin dagizuen ez deutsadala errurik aurkitzen».

**K** Urten eban, bada, kanpora Jesusek, arantzazko koroa eta purpurazko mantua eroiazala. Pilatok esan eutsen:

**S** «Hemen dozue gizona».

**K** Abadeburuak eta guardiak, Ha ikustean, deadarka hasi ziran:

**S** «Kurutzera hori! Josi kurutzean!»
**K** Pilatok esan eutsen:

**S** «Eroan zeuek eta kurutzeratu; nik ez deutsat errurik aurkitzen».

**K** Juduek erantzun eutsoen:

**S** «Guk badogu Legea, eta Lege horren arabera heriotza-zigorra merezi dau, Jainkoaren Seme egin dau-eta bere burua».

**K** Hori entzutean, oraindino gehiago bildurtu zan Pilato eta, barriro jauregira sarturik, itaundu eutsan Jesusi:

**S** «Nongoa zara Zu?»

**K** Jesusek, ostera, ez eutsan erantzun ere egin. Orduan, Pilatok esan eutsan:

**S** «Ez al deustazu erantzun behar? Ez al dakizu aginpidea daukadana Zu askatzeko nahiz kurutzeratzeko?»

**K** Jesusek erantzun eutsan:

† «Ez zeunke nire gain bat ere aginpiderik izango, Jainkoak emon ez baleutsu. Horregaitik, zure esku itzi nauanak pekatu handiagoa dauko».

*Kendu Hori, kendu! Josi kurutzean!*

**K** Ordutik, Jesus askatu guran ebilen Pilato. Baina juduak deadarka hasi jakozan:
«Hori askatzen badozu, ez zara enperadorearen adiskide. Bere burua errege egiten dauanak enperadorearen aurka dihardu».

**K** Pilatok, berba horreek entzutean, kanpora eroan eban Jesus eta auzitegian jesarriazo, «Harlauzatua» —hebreeraz Gabbata— eritzon lekuan. Pazko-jairako prestaketa-eguna zan, eguerdi ingurua. Pilatok esan eutsen juduei:

**S** «Horra hor zuen erregea».

**K** Orduan, hareek deadarka:

**S** «Kendu Hori, kendu! Josi kurutzean!»

**K** Eta Pilatok:

**S** «Zuen erregea kurutzeratu behar al dot?»

**K** Abadeburuek erantzun eutsoen:

**S** «Ez dogu enperadorea baino beste erregerik».
**K** Orduan, Pilatok hareen esku itzi eban, kurutzeratu egien.

*Kurutzean josi eben, eta Haregaz batera beste bi.*

Hartu eben, beraz, Jesus, eta, kurutzea sorbaldan eroiala, «Buru-hazur» —hebreeraz Golgota— eritzon lekurantz urten eban. Han josi eben kurutzean, eta haregaz batera beste bi, alde bakoitzean bana, eta erdian Jesus. Pilatok kartel bat idatzi eta kurutze-buruan ipini eban; hau egoan idatzita: JESUS NAZARETARRA, JUDUEN ERREGEA.
Judu askok irakurri eban kartela, uritik hurrean egoan-eta Jesus kurutzeratu eben lekua; gainera, hebreeraz, latinez eta grekoz egoan idatzita. Juduen abadeburuek esan eutsoen Pilatori:

**S** «Ez idatzi "Juduen erregea", "Juduen erregea dala dinoala" baino».

**K** Pilatok erantzun eban:

**S** «Idatzia idatzirik bego».

***HEMENDIK AURRERA ZUTUNIK EGON DAITEKEZ***

*Nire jantziak euren artean banatu ebezan.*

**K** Gudariek, Jesus kurutzean josi ondoren, haren jantziak hartu eta lau zati egin ebezan, bakoitzarentzat bana; gero, tunikea hartu eben baina jostura bakoa zanez, hau da, goitik behera ehundua, alkarri esan eutsoen:

**S** «Ez dagigun urratu; zotz egin dagigun ea zeinentzat urteten dauan».

**K** Holan bete zan Liburu Santuak dinoana: «Nire jantziak euren artean banatu ebezan, eta nire tunikea zotz egin». Hain zuzen ere, horixe egin eben gudariek.

*Horra hor zure Semea. Horra hor zure ama!*

Jesusen kurutzearen ondoan egozan haren ama, amaren ahiztea, Maria Kleofasen emaztea eta Maria Magdalena. Jesusek, bere ama eta honen ondoan maite eban ikaslea ikusirik, esan eutsan amari:

† «Emakume, horra hor zure semea!»

**K** Gero, ikasleari esan eutsan:

† «Horra hor zure ama!»

**K** Eta ordutik aurrera ikasleak bere etxean hartu eban.

*Bete da dana.*

Ondoren, Jesusek, dana bete zala jakinik, Liburu Santuak esana osorik bete zedin, esan eban:

† «Egarri naz».

**K** Bazan han ozpinez betetako pitxar bat. Orduan, belaki bat ozpinetan busti eta, kainabera bati muturrean loturik, ezpanetara hurreratu eutsoen. Ozpina hartutakoan, Jesusek esan eban:

† «Bete da dana».

**K** Eta, burua makurtuz, azken arnasea emon eban.

***Hemen, belauniko jarri eta egonalditxo bat egiten da.***

*Odolak eta urak urten eben.*

**K** Pazko-jairako prestaketa-eguna zan, eta juduek ez eben nahi gorpuak zapatuz kurutzean gelditzerik, zapatu ha oso jaiegun handia zan-eta. Horregaitik, kurutzeratuei berna-hazurrak hausi eta handik kentzeko eskatu eutsoen Pilatori. Joan ziran, bada, gudariak eta berna-hazurrak hausi eutseezan Jesusegaz kurutzeratutako biei; baina, Jesusegana heldu ziranean, ordurako hilik egoala ikusirik, ez eutsoen berna-hazurrik hausi, baina gudari batek lantzaz saihetsa zulatu eutsan, eta bat-batean odolak eta urak urten eben.
Ikusi ebanak berak autortzen dau eta haren autormena benetakoa da. Berak badaki egia dinoana, zuek ere sinistu dagizuen. Hau Liburu Santuak dinoena bete zedin jazo zan: «Ez deutsoe hazurrik hausiko». Eta beste pasarte batean hau dino: «Zulatu ebenari begiratuko deutsoe».

*Jesusen gorpua, usain gozoz igurtzirik,*
*oihaletan batu eben.*

**K** Gero, Arimateako Josek Jesusen gorpua eroateko baimena eskatu eutsan Pilatori. Jesusen ikaslea zan Jose, baina isilpean, juduen bildurrez. Pilatok baimena emon eutsan. Harek, orduan, joan eta Jesusen gorpua eroan egin eban.
Etorri zan Nikodemo ere —behin batean gauez Jesus ikustera joan zan ha— hogeita hamarren bat kiloko mirra eta aloezko nahastura ekarrela. Hartu eben, bada, Jesusen gorpua eta oihal-zerrendaz batu eben, tartean usainkiak ezarriz, juduek hobiratzeko daben ohiturearen arabera. Jesus kurutzeratu eben lekutik hurrean, baratze bat egoan, eta baratzean ordurarte inor hobiratu bako hilobi barria. Hilobia hurrean egoanez, hantxe ipini eben Jesus, juduen Pazko-eguna hasteko egoan-eta.

## Hitzaldia

## OTOITZ NAGUSIA

### Oharra jainko-herriaren otoitzari

Bateotik gehiago Jesukristoren abadetzan esku hartzen dogunok badogu eginkizun nagusi bat: Jesukristoren kurutzetik sortzen dan bizitzatik at ez daitela inor ere geratu. Hau dala-ta, gaurko gure otoitza luze-zabala izango da. Jarri gaitezan, ba, otoizgiroan:

(Abadeak) *Eliza santuaren alde*

*Eskatu deiogun Jainkoari Elizeak nahinon eta noiz nahi izan daiala bere babesa, heldu daitela batasunera eta, bakean iragarri daiala bere berbea.*

Jainko ahalguztidun betikoa,
Kristogan herrialde guztiei
agertu deutsezu zure handitasuna:
zaindu eizu zure errukiaren lana,
mundu guztian zabaldurik dagoen zure Elizeak
sinismenean sendo iraun daian
eta zure izena autortu.
Jesukristo gure Jaunaren bitartez. —Amen

*Ministro guztien alde eta eliztarren alde*

*Egin daigun otoitz Aita Santuaren alde, gotzainen, abadeen, diakonoen eta eliztar guztien alde:*

Jainko ahalguztidun betikoa,
Elizearen gorputz osoa
santu egiten dozu eta gidatzen zeure Espirituaz:
entzun eliz zerbitzari guztien alde
egiten deutsuguzan otoitzak;
zure graziari esker,
bakotxa bere egiteko berezian
zure zerbitzari zintzo izan daiten.
Jesukristo gure Jaunaren bitartez.
—Amen.

## *Jaungoikoagan sinisten ez dabenen alde*

*Egin daigun otoitz, Jainkoagan sinisten ez dabenen alde.: izan daien Jainkoagana heltzearen poza.*

Jainko ahalguztidun betikoa,
zeuk egin dituzu gizaki guztiak,
beti zure bila ibili daitezan
eta, Zu aurkiturik, Zugan atseden izan daien;
egizu, mundu honetako neke ta estualdietan,
danek ikusi daiezela zure bihotz onaren ezaugarriak
eta zure sinistedunek egiten deutsuen autormena;
holan pozik autortu daien
Zeu zarala egiazko Jainko bakarra
eta gizaki guztien Aita.
Jesukristo gure Jaunaren bitartez.
—Amen.

## *Agintarien alde*

*Eskatu daigun herri guztietako agintariak bakerantz eta gizaki guztien askatasunerantz zuzendu daizala euren pentsamentuetan eta erabagietan.*

Jainko ahalguztidun betikoa,
zeure eskuetan daukazuz gizakien bihotzak
eta herrien eskubideak.
Begitu begi onez herrietako agintariei:
zeuk emonik, mundu guztian sendo izan daitezan
bakea, aurrerapena eta erlijino-askatasuna.
Jesukristo gure Jaunaren bitartez.
—Amen.

*Nahigabetuen alde*

*Pekatuaren ondorenak gogorren jasaten dabenen alde: baztertuta, espetxean, gaisorik, etsipenean..., dagozenen alde.*

Jainko ahalguztidun betikoa,
atsekabetuen poza, nekatuen indarra:
heldu beitez zugana
edozein estualditan zuri deiez dagozanen eskariak,
euren beharrizanean
zure errukiaren laguntza aurkitu daien.
Jesukristo gure Jaunaren bitartez.
—Amen.

---

## KURUTZEAREN GURTZEA

### Oharra kurutzea sartu aurretik

*Jesukristoren kurutzea da gaur gure batzarraren erdi-muina. Atzo Eukaristiaren erregalua eskertu geutson Jesusi. Gaur bere heriotzea eskertuko deutsogu, heriotza horretan agintzari eder bat egiten deuskulako: bildurgarria izan arren, heriotzea ez da azkena. Ona da Jainkoagan uste on osoa izatea. Itzi Jainkoaren esku azken hitza.*

### *Kurutzearen sarrerea eta gurtzea*




***Kurutzea gurtzeko gitxitxo batzuk baino geratzen ez direnean, hauxe abestu:***

**ZU ZARA GURE POZA**
**KURUTZ SALBATZAILEA**






Zugaitz gainetik zu, Kristo,
zu danen erregea,
zu bizitz, poz, itxaropen,
Kristo Salbaztailea. **R/.**


Errege, zure Odola
munduarentzat argi,
zu, Jauna, basamortuan
gure salbamen harri. **R/.**

Lur Barrirako bidean
zu itxaropen, zugaitz;
egarri dira herriak,
zu ur bizien harkaitz. **R/.**

## JAUNARTZEA

*Aldare gainean "korporala" jarri; Gure Jaunaren bila joan, eta aldare gainean jarri... (kandeladun bik lagundu leikioe, eta isilean dakarre).*

## GURE AITA

† Salbatzaileak agindu ta irakatsiari jarraituz, bildur barik esan daigun:
**Gure Aita...**

† Atara gagizuz, Jauna, gatx guztietatik; emoiguzu bakea gure egunotan, zure errukiari esker pekatutik garbi bizi izan gaitezan eta estualdietan sendo. Betiko zorionaren itxaropenean Jesukristo gure Salbatzailea noiz etorriko dan zain gagozela.

- **Zeurea dozu erregetza,**
**zeureak ospe ta indarra orain eta beti.**

† Jesukristo gure Jauna zeuk esana da Apostoluei: Bakea izten deutsuet, neure bakea emoten. Begira zure Elizearen sinismenari eta ez gure pekatuei eta zeure gogoa danez, emoiozu Elizeari bakea, emon batasuna, errege bizi zarata. Gizaldi ta gizaldietan.
—Amen.




† Jaunaren bakea beti zuekin.
—**Eta zure espirituarekin.**

**† Emoiozue bakea alkarri.**

† Hona hemen Jaungoikoaren Bildotsa;
hona munduko pekatua kentzen dauana.
Zoriontsuak honen mahaira deituak.

—*Jauna, ni ez naz inor zu nire etxean sartzeko,*
*baina esaizu hitz bat eta osatuko naz.*



## JAUNARTZEA (Abestia)

*Jesus maitea zan azken afarian*
*bera emon nahirik ardao ta ogian;*
*guretzat zalarik hilteko aurrean*
*maitasunak zeukan bihotza menpean.*

***—Gurtu daigun beti Jesus Jainko Jauna***
***sakramentu honetan gurekin dagoana.***

*Apostoluei minez esan deutse:*
*«Ni gaur saldua naiz, bihar hilgo nabe;*
*Aitarenganako denbora jat bete,*
*hona orain zenbat zaituedan maite.*

**Jaunartze osteko otoitza**
*Egin daigun otoitz*

Jainko ahalguztidun betikoa,
zure Seme Jesukristoren heriotzeaz eta biztuereaz
barritu gaituzu:
zaindu eizu gugan zure errukiaren lana;
Misterio honetan parte harturik,
beti zeure zerbitzari izan gaitezan.
Jesukristo gure Jaunaren bitartez.
—Amen.

**Oharrak**
Pazko Gaua

*(Ez dago azken onespenik. Haren ordez...)*

**Herriaren gaineko otoitza**
† Jauna zuekin.
*—Eta zure espirituarekin*

Jauna, zure Semearen heriotzea ospatu dogu,
eta bere biztuera santuaren zain gagoz;
bialdu eiguzu zure bedeinkapen ugaria,
etorri bekigu zure parkamena,
emoiguzu zure poza,
gehitu gure sinismena,
eta eroan gagizuz betiko salbamenera.
Jesukristo gure Jaunaren bitartez.
—Amen.

**URTEEREA ISILEAN**

*(Altareko maindirak-eta, tolostu ta gorde)*

# PAZKO

# -

# GAUA

*01* ***Kantu saioa***

*02* ***Beharrezko gauzen zerrendea****:*

*Sua, Tenazak, Ikatza, Intzentzua ta Ontzia eta Hautsa, Metxea, Koadernoak, Linternea, Kandelak (Kontuz negarragaz)*

*03 Kantu-orriak, erantzunekin*

*04* ***Txilinik?***

*05* ***Händel****en* ***Aleluya****:* Grabaketea

*06* ***Ágape?***

*.../...* *Hasierako ohartxoak eginda, gauzak prest egonik... argi guztiak amatatu, eta...*

***Sarrera-Oharra*** *(Ohargileak)*

*Senideok, prest? Gertu gagoz?*

*Kristogan sinisten dogunontzat hauxe da gaurik garrantzitsuena, gaurik ederrena, gaurik itxaropentsuena... heriotzearen gainetiko bizitzea autortzen dogulako.*

*Gau honetan GOGORATU egingo doguz Jainkoaren egintza harrigarriak, eta bere Semeagan egiten dauen sorkuntza barria.*

*Suaren inguruan alkartu gara; itxaropenez beterik zain dagozen gaulari (zentinela) lez. Egun barriaren zain gagoz. Eta egun horri emongo deutsogu hasierea geure abestiz ta otoitzez, Jainkoaren egintza zoragarria ospatzeko. "BIZTU DA KRISTO!" esateko.*

**Unetxo baten isilik**.

**Suaren bedeinkapena**

**Egin daigun otoitz!**

Jaungoiko Jauna,
zure Semea munduaren argia dan ezkero,
Beronen bidez emon deutsezu gizakiei
zure argiaren dirdirea.
Bedeinkatu † eizu su barri hau, eta iguzu,
Pazko-jaiotan zeru gauzetarako bizturik,
arima garbiz heldu gaitezela betiko argiaren jaietara.
Jesukristo gure Jaunaren bitartez. —Amen.

**Pazko Zuzia biztea**

**1** **(Pazko Zuzia biztu aurretik, herriari erakutsiz)**:

1. Kristo, atzo eta gaur **(goitik beherako marrea)**
2. Hasierea ta Amaierea **(zeharretako marrea)**
3. Alfa **(goikaldean A ezarri)**
4. eta Omega **(behekaldean O ezarri)**
5. Bereak dira egunak **(urtearen lehenengo zenbakia)**
6. eta menderen mendeak **(urtearen bigarren zenbakia)**
7. Berari ospe eta erregetzea **(urtearen hirugarren zenbakia)**
8. Gizaldien gizaldietan. Amen. **(urtearen laugarren zenbakia)**

**2** (**Pazko Zuzia biztu, hurrengo hitzak esanez:** )

Aintzaz biztu dan Kristoren argiak
uxatu daizala gogo-bihotzen ilunak

## IBILTEUNA




*(Lehenengo deian...* Han bertan kandelaren batzuk biztu, eta eliz atera hurreratu. Hemen, herriari begira, *bigarren deia* egin).

**(Eta zelan biztu kandelea, halan doaz elizan sartzen, argiak amatatuta dagozela. Bakotxa bere lekura doa, eta azkenean abadea ere bai. Presbiterio mailadian esaten dau** *hirugarren agurra*, **eta, erantzunaz bat, argi guztiak bizten dira. Une honetan Pazko Zuzia bere lekuan jarten da eta intzentzuz inguratu)**

## PAZKO DEIA

**(Eliztarrak zutunik dagoz, argiak biztuta, Pazko Deia entzuten).**

### PAZKO-DEIARI OHARRA

(**Ohargileak**)

Horrenbesteko argitasunez liluratuta, Elizeak gorespen abesti alaia haizeratzen dau. Horrela iragarten dau Jainkoak egindako harrigarriak, guk gau honetan goraltzen doguzenak.

Poztu bedi, poztu oraintxe, zeruko aingeru-taldea,
poztu beitez zerutar guztiak,
eta Kristo berbiztuaren garaipena ospatzeko
entzun bedi salbamenaren irrintzi pozgarria.

Alaitu bedi lurra ere, horrelako argi-errainuz argiturik,
eta betiko erregearen diztiraz beterik,
ikusi begi zelan izan diran uxatuak lurbira guztiko ilunpeak.

Poztu bedi baita, Eliza ama ere,
horrenbesteko argi-diztiraz apaindurik;
eta herriaren oihu-hotsez dar-dar jarri bedi eliz-barru hau.

V/. Jauna zuekin
R/. Eta zure espirituarekin
V/. Gora bihotzak
R/. Jaunagan daukaguz
V/. Eskerrak Jaungoiko gure Jaunari
R/. Egoki da eta zuzen.

Egoki da bai eta zuzen bihotzez eta gogoz oihuka goratzea
Jaungoiko ikusi ezin Aita ahalguztiduna
eta haren Seme bakar Jesukristo gure Jauna.
Beronek ordaindu deutso gure ordez
Aita betikoari Adanen zorra,
eta bere odol santuaz kendu deusku
antxinako pekatuaren zigorra.

Pazko Jaiak ditugu:
jai honeetan eskeintzen da egiazko Bildotsa,
bere odolaz fededunen etxeetako ateak sagaratzen dituana.|

Gau honetan, Jauna,
atara zenduzan zuk Egiptotik israeldarrak,
gure guraso zaharrak,
eta Itsaso Gorrian zehar, oinik busti barik legorrez eroan.

Hauxe da, izan ere, harako gaua,
zutabe antzeko laino argitsu baten diztirak
pekatuaren ilunpeak uxatu zituana.

Hauxe da, bai, gaua:
lur zabalean Kristogan sinisten dabenak,
lurreko makurkeria eta pekatuen ilunpetik atara,
graziara bihurtu eta santutasunera erakarten dituan gaua.

Hauxe da gaua,
Kristok, heriotzearen kateak ausirik,
hilen artetik garaile urten ebanekoa.

Bai harrigarria, zure guganako errukia!
Bai neurrigabea, zure maitasunaren samurra!
Serbitzaria erosteko, Semea emotea!

Beharrezkoa, benetan, Adanen pekatua,
Kristoren heriotzeaz parkatua.

Hau erru zorionekoa,
holako Erosle bikaina lortu deuskuna!

Hau gau santua, gaiztakeriak uxatu
eta hobenak garbitzen dituana,
jausiei errugabetasuna
eta minduei poza ekarten deutsena.
Hau bai, benetan, gau zoriontsua:
zerua lurragaz, gizakia Jainkoagaz bat egiten danekoa!

Gau pozgarri honetan, hartu egizu, Aita on horrek,
arratsaldeko gorespen-opari hau:
Eliza santeak egiten deutsu, bere serbitzarien eskuz,
argizari honen eskeintza ederrean.

Zure izenaren aintzarako
bedeinkatu dogun argizari honek, Jauna,
bizturik iraun daiala, gau honetako iluna urratzeko.
Eta zuretzat usain gozo bihurturik,
izarren argiarekin alkartu dedila.

Bizturik aurkitu daiala goizeko izarrak:
iluntzerik ezagutzen ez dauan Artizarrak,
zure Seme Jesukristo gure Jaunak,
hilen artetik biztuta, gizadiari argi egin deutsonak.

Errege bizi da-ta gizaldi eta gizaldietan.
R/. Amen.

**(Honen amaieran, herriak abestu egiten dau:)**

**Biztu da Kristo: Aleluia!;**
**Guregan dago: Aleluia!**

Jainkoak baitu gaur Kristo biztu: Aleluia!
Bere indarrez biztuko gaitu: Aleluia!, Aleluia!

**(Une honetan kandelak amatatu egiten dira. Kontuz!, kandela-negarraz)**

## BIGARREN ZATIA: HITZAREN LITUR-

**Abadeak:**

Senide maiteok: Pazko-Deia entzun ondoren entzun daigun orain Jainkoaren Berbea. Sorkuntza-egunetik hasiko da, gizakiaren egoeretan Jainkoak zelan salbamena iragarten deutson eta gauzatzen dauen ikusiko dogu, eta zelan, azkenak diren aldiotan, bere Semea bialdu deuskun Salbatzaile. Arretaz eta esker oneko giroan entzun daigun. Egin daigun otoitz, Jaunak gugan osotu daian Pazko-misterioan hasi eban salbamen-egintza hau.

**a) Irakurgaia**
**b) Salmu kantea**
**d) Otoitza**

**1. Gn 1, 1 — 2, 2**




Zuzena da Jaunaren hitza,
leiala harek egin dauan guztia.
Zuzen eta bidezko dana dau maite,
haren graziaz lurra dago bete. **R/.**

Jaunaren hitzak egin dauz zeruak,
haren aho-arnaseak izar mordoak.
Zaragian lez batu dauz itsas urak,
askan lez daukaz olatuak. **R/**.

Bai dohatsu Jauna Jainko dauan jendea,
bere oinorde autatu dauan herria.
Begira dago Jauna zerutik,
gizon guztiengana adi-adi. **R/.**

Gure bihotza Jaunaren zain daukagu,
lagun eta babes bera dogu.
Harengan pozten jaku barrua,
haren izen santuan dogu itxaropena. R/.

(**Abadeak**)
**Egin daigun otoitz!**

Gizakia harrigarriro egin
eta harrigarriago salbatu dozun Jainko Jauna;
iguzu, pekatuaren atseginkeriari
gogor egin deiogula zentzunez,
betiko pozetara heltzea merezi daigun.
Jesukristo gure Jaunaren bitartez.

- **Amen**.

**3. Ex 14, 15-15, 1**




Kanta deiogun Jaunari garai-garai dalako,
zaldi eta zaldun itsasora amildu dauzelako.
Jauna da nire indar eta kemen, *
bera izan da nire salbamen.
Hau dot nire Jainko, zabal dot goratuko, *
gurasoen Aita, bera nik ospatuko. **R/.**

Gudari da Jauna,
Jauna dau berak izena.
Faraonen burdi eta gudariak *
itsasoan amildu dauz guztiak,
Itsas Gorrian ito, haren buruzagi handiak. **R/.**

Ur-olatuek estaldu ebezan,
harri koskorra lez hondora joan ziran.
Zure eskumea, Jauna, bizkor harrigarria,
zure eskumeak, Jauna, birrintzen dau etsaia. **R/.**

Sartu dozuz eta landatu zu jabe zaituen mendian,
zuk, Jauna, bizi izateko prestatu dozun tokian,
zure eskuek, Jauna, eregi eben jauretxean.
Jauna dogu errege, betidanik eta beti ere. **R/.**

**(Abadeak)**
**Egin daigun otoitz!**

Jainko Jauna, Ebanjelioaren argiari esker
argitu dozuz Testamentu Zaharreko mirariak:
horregaitik ikusten dogu Itsaso Gorrian
bateoko iturriaren irudia,
eta kristinau herriaren irudia
Egiptotik askaturiko Judegu-herrian.
Egizu, gizaki guztiak, sinismenari esker,
Israel lez autatuak izanik,
zure Espirituaren bitartez
bizi barrira etorri daitezela. Jesukristo.
- Amen.

**7. Ez 36, 16-28**




**Sal 41**

Nire gogoa Jainkoaz, Jainko biziaz egarri da, †
noiz noake Jainkoaren aurpegia ikustera?
Urtzen daukat barruan gogoa au gogoratuz:
Zelan joaten nintzan, jendetzaren aurrean,
Jainkoaren etxera, irrintzika ta goraka, jaitarrekin batera. **R/.**

Bialdu zure argia eta zure egia, eurok eroan nagiela,
zure mendi santura, zure bizileku santura sartu naiela.
Eta sartuko naz Jainkoaren altarara, †
poz eta atsegin dodan Jainkoagana,
zitaraz goretsiko zaitut, Jauna, ene Jainkoa. **R/.**

**(Abadeak)**
**Egin daigun otoitz!**

Jainko Jauna,
indar lokatu-ezina, eta argi ezin ilundua;
begitu eiozu bihotz onez
Eliza osoaren misterio harrigarriari;
eta betidanik nahi izan dozunez,
bakean amaitu eizu gizaki guztiak salbatzeko lana.
Mundu guztiak ezagutu daiala gauza harrigarri hau:
jausita egoena, jasoa dala; zaharra, barritua,
eta dana lehengo neurrian ezarria,
diren guztien hasiera den zure Seme
eta gure Jaun Jesukristori esker,
zurekin bizi da-ta gizaldi ta gizaldi guztietan.
—Amen.

**AINTZARAKO ABADEAK EGITEN DAUAN OHARRA**

Gizadiak Jainkoaren eskutik eta bere maitasunean egiten dauan, eta Israel Herriak egin dauan bide luzearen barri izan dogu. Ibilaldi luze honen amaierara heldu aurretik alaitasunez abestu daigun Jainkoaren Aintza:

***Oharra:*** *Biztu altarako kandelak, eta AINTZA abestu: txilinak jo*




**Egin daigun otoitz!**

Jainko Jauna, Gau Santu hau
Kristo hilen artetik biztuaren diztireaz argitzen dozu;
gorde eizu, arren, zure familiako seme-alaba barrietan
zeuk emondako seme-alaba bihotza;
gorputz-arimak barriztaturik,
osoan izan daitezan zure zerbitzari. Jesukristo.
—Amen.

**San Paulo apostoluak erromarrei 6, 3-11**

Senideok: Bateoaz Kristo Jesusi lotuak izan garanok, Haren heriotzeari lotuak izan gara. Bateoaren bitartez beragaz heriotzan hobiratuak izan gara; Kristo hilen artetik Aitaren aintzaz biztua izan zan lez, geu ere biziera barri baten ibili gaitezan.

Izan ere, gure izatea beragaz bat eginik badago, Harena lako heriotzan, bardin egongo da harena lako bizieran ere. Ezagutu daigun, gure antxinako gizona Kristogaz kurutzean josia izan dala, pekatuzko izaera hau ezereztua gelditu zedin eta, holan, gu geu pekatuaren morrontzatik askatuak izan gaitezan. Norbait hilten danean, pekatutik askatua gelditzen da-ta.

Beraz, gu Kristogaz hil bagara, sinisten dogu, bizi ere beragaz bizi izango garala; izan ere, badakigu Kristo hilen artetik biztu zan ezkero, ez dala barriro hilgo; heriotzeak ez dau harengan gehiago aginterik. Haren hiltea, pekatuarentzat behin-betiko hiltea izan zan, eta haren bizi izatea Jaungoikoarentzat bizi izatea da. Holan, bada, zuek ere euki eizuez zeuon buruak pekatuarentzat hilda lez, eta Jaungoikoarentzat bizirik, Kristo Jesus gure Jaunagan.




(edo)




Eskerrak Jaunari **o**na da-ta,
haren maitasuna beti**ko**a da-ta.
Israel-etxeak hau **e**san begi:
«Haren maitasuna **be**tikoa». **R/.**

«Jaunaren eskume**ak** jaso nau,
Jaunaren eskumeak bizkor **jo**katu dau».
Ez naz hilgo, **bi**zi baino,
Jaunaren eginak nik oi**hu** egingo. **R/.**

Etxegileek baztertuta**ko** harria
berori bihurtu da **gil**tzarria.
Jaunak e**gin** dau hori,
gure begien **har**rigarri. **R/.**

---

**Ebanjeioak:**

**«A»: Mt 28, 1-10**

**† Jesukristoren ebanjelioa san Mateoren liburutik**

Zapatu biharamonean, astearen lehenengo eguna argitzean, Maria Madalena eta beste Maria hilobia ikusten joan ziran. Eta, halako baten, lur-ikara handi bat izan zan; Jaunaren Aingeru bat zerutik etorri zan eta, hurreraturik, harria bere lekutik irauli eban, eta gainean jesarri zan. Aingeruaren aurpegia tximistea zirudian, eta soinekoak edur zuria; zaintzaileak bildurrez dardarka eta hilda lez gelditu ziran.

Aingeruak honan berba egin eutsen emakumeei: «Zuek ez izan bildurrik! Badakit Jesus kurutzean josiaren bila zatozena; ez dago hemen; biztu da, berak esan eban lez. Zatoze eta ikusi lurperaturik egoan lekua. Zoaze arin-arin haren ikasleengana, eta esaiezue: "Biztu da hilen artetik, eta hor joatzue aurretik Galileara. Hantxe ikusiko dozue." Neuk dinotsuet».

Hilobitik arin-arin alde egin, eta bihotz-ikaraz eta pozaren pozez lasterka joan ziran, ikasleei barri emotera.

Eta halako baten, bidera urten eutsen Jesusek, eta esan eutsen: «Poztu zaiteze!» Hareik hurreratu jakozan eta ahozpez oinetatik heldu eta gurtu egin eben. Orduan Jesusek esan eutsen: «Ez izan bildurrik. Zoaze eta esan nire anaiei Galileara joateko; hantxe ikusiko nabe.»

**«B»: Mk 16, 1-8**
**† Jesukristoren ebanjelioa san Markosen liburutik**

Zapatu-biharamonean, Maria Madalenak eta Santiagoren Mariak eta Salomek ukendu usain gozodunak erosi ebezan, Jesusen gorpua igursteko asmoz. Eta goizean goizetik, astearen lehenengo egunean, eguzkiak urtetean, hilobira joan ziran.

Eta honan inotsoen alkarri: «Nork irauliko deusku hilobi-sarrerako harria?» Begitu, eta harria iraulita ikusi eben, handi-handia izan arren.

Eta barruan sartu ziranean, gazte bat ikusi eben, eskoi-aldean jesarrita, soineko zuriz jantzita. Eta ikaratu egin ziran.

Harek esan eutsen: «Ez ikaratu. Nazareteko Jesus kurutzean josiaren bila zatoze? Biztu da; ez dago hemen. Hona hemen ipini eben lekua. Zoaze arin, eta esan haren ikasleei eta Pedrori, aurretik joakela Galileara; hantxe ikusiko dabe, berak esan eutsen lez.»

Hareek iheska urten eben hilobitik, bildurraren bildurrez; eta ez eutsoen inori ezer esan, hain handia zalako sartu jaken bildurra.

**«C»: Lk 24, 1-12**
**† Jesukristoren ebanjelioa san Lukasen liburutik**

Astearen lehenengo egunean, goizean goizetik, hilobira joan ziran emakumeak, gertatuta eukezan gantzu usain gozodunak hartuta; eta harria hilobitik

baztertuta aurkitu eben. Sartu ziran, eta ez eben han Jesus Jaunaren gorpurik aurkitu.

Zer izan ete eitekean ez ekiela, gizon bi agertu jakezan, soineko diztiratsutan. Emakumeak, ikaraturik, eta begiak lurrera begira ebezela, hareek esan eutseen: «Zetan zabize hilen artean, bizi danaren bila? Ez dago hemen; biztu da. Gogoratu egizue, Galilean egoala esan eutsuena: "Beharrezkoa zala Gizonaren Semea pekatarien eskuetan itzia izatea, eta kurutzean josia; baina hirugarren egunean biztu egingo zala"». Orduan gomutatu ziran haren berbokaz.

Bihurtu ziran hilobitik, eta guzti honen barri emon eutseen Hamaikei eta besteei. Mari Madalenak, Joanak eta Santiagoren Mariak, eta euren beste lagunek esan eutseezan gauzok apostoluei. Honei, ostera, zorakeriak begitandu jakezan barri horreik, eta ez eutseen sinistu.

Baina Pedro, jagi eta hilobira joan zan, arineketan; makurtuta, oihalak bakarrik ikusi ebazan lurrean, eta jazotakoaz harrituta joan zan.

---

## HOMILIA

## HIRUGARREN ZATIA: BATEO-LITURGIA

***Sarrera-Oharra (Ohargileak)***

Senideok: Amaitu dogu ARGIAREN liturgia, eta orain URAREN LITURGIARA sartzen gara: Bateo-agintzariak barriztatuko doguz bizitza barriaren ezaugarri dogun iturri honetan. Egin daigun gartsu otoitz, eta egon gaitezan adi.

**Abadearen oharra:**

Senide maiteok: eskatu deiogun Jaungoiko Jaunari
santutu daiala ur hau;
ur honetatik bizi barrirako jaioko direnak
Kristogan seme-alaba ordeko egin daitezan.

**Erruki, Jauna.............................................. Erruki, Jauna**
**Kristo, erruki.............................................. Kristo, erruki**
**Erruki, Jauna................................................ Erruki Jauna**

Jainkoaren Ama Maria ..............................................Otoitz gure alde
Mikel Santua ..............................................Otoitz gure alde
Aingeru Santuak ..............................................Otoitz gure alde
Joan Bateatzaile Santua..............................................Otoitz gure alde
Jose Santua ..............................................Otoitz gure alde
Pedro ta Paulo apostolu Santuak ..............................................Otoitz gure alde
Andres Santua ..............................................Otoitz gure alde
Joan Santua ..............................................Otoitz gure alde
Maria Magdalena santua ..............................................Otoitz gure alde
Esteban Santua ..............................................Otoitz gure alde

Antiokiako Iñazio Santua .......................................... Otoitz gure alde
Lorentzo Santua .......................................................... Otoitz gure alde
Perpetua ta Felizitas Santuak ..................................... Otoitz gure alde
Ines Santua ................................................................. Otoitz gure alde
Gregorio Santua .......................................................... Otoitz gure alde
Agustin Santua ............................................................ Otoitz gure alde
Atanasio Santua .......................................................... Otoitz gure alde
Basilio Santua ............................................................. Otoitz gure alde
Martin Santua .............................................................. Otoitz gure alde
Benito Santua .............................................................. Otoitz gure alde
Frantzisko ta Domingo Santuak ................................. Otoitz gure alde
Armentiako Prudentzio Santua .................................. Otoitz gure alde
Loiolako Iñazio Santua ............................................. Otoitz gure alde
Xabierko Frantzisko Santua ....................................... Otoitz gure alde
Garikoitz Mikel Santua .............................................. Otoitz gure alde
Berriotxoako Balendin Santua.................................... Otoitz gure alde
Joan Maria Vianney Santua......................................... Otoitz gure alde
Sienako Katalina Santua ............................................. Otoitz gure alde
Avilako Teresa Santua ................................................ Otoitz gure alde
Jainkoaren Santu guztiak ........................................... Otoitz gure alde

Agertu zakiguz errukior ............................... **Gorde gagizuz, Jauna.**
Gatx guztietatik........................................... **Gorde gagizuz, Jauna.**
Pekatu guztietatik ....................................... **Gorde gagizuz, Jauna.**
Betiko heriotzatik........................................ **Gorde gagizuz, Jauna.**
Zure gizon egiteagaitik................................ **Gorde gagizuz, Jauna.**
Zure heriotza ta biztueragaitik..................... **Gorde gagizuz, Jauna.**
Espiritu Santuaren etorrereagaitik.............. **Gorde gagizuz, Jauna.**

Gu, pekatariok.............................................. **Arren, entzun gaizuz**
* Aukeratuok bateoko graziaz
bizibarritu daizuzan ............................. **Arren, entzun gaizuz**
Zeure graziaz, Bateo-iturri hau, zure seme-alabak sortzeko,
santutu daizun ......................................... **Arren, entzun gaizuz**
Jesus, Jainko biziaren Seme horrek ............. **Arren, entzun gaizuz**

**(Bateatzekorik bada...)**

**Abadeak:**
Jainko ahalguztidun eta betikoa, zagoz hemen,
zure erruki handiaren sakramentuei indarra emoteko,
bialdu zure seme-alaba ordeko egiten gaituen Espiritua,
bateo-iturri honetatik jaioko jatzuzan herriak barrizteko;
gure eginkizun apalez egiten doguna
zure graziaren indarrez osotu daitela. Jesukristo.
—Amen.

## BATEO-URA BEDEINKATZEA

Jauna,
gauza harrigarriak egiten dituzu sakramentuetan
zeure indar ezkutuaz,
eta era askotan erabili izan dozu ura
Bateoko grazia adierazoteko.

Jauna,
munduaren hasieratik zure Espiritua
ba ebilen ur-gainean,
ordutik hartu eian urak santutzeko indarra.
Jauna,
Uriola handiko uren bidez erakutsi zeuskun
bizi barria emoten deuskun Bateoa bera izango zala
pekatuaren heriotza eta santutasunaren jaiotza.

Jauna,
Abrahanen ondorengoak, Itsaso Gorrian zehar,
oinik busti barik eroan zenduzan,
Faraonen menpetik atara zenduan herria
bateatutako jendearen irudi izan zedin.

Jauna, Zure Semea
Jordan ibaian Joanek bateaturik,
Espiritu santuaz igurtzia izan zan,
eta kurutzean egoela,
bere saihetsetik ura ta odola isuri zituan,
eta biztu ondoren, ikasleei honela agindu eutsen:
"Zoaze eta ikasle eizuez herrialde guztiak,
Aitaren eta Semearen
eta Espiritu santuaren izenean bateatuz."

Orain, ba, Jauna,
begiratu eiozu zure Elizeari,
eta sortu beragan Bateo-iturria.
Ur honek hartu bei Espiritu santuagandik
zure Seme bakarraren grazia;
zure antzeko egina dan gizakia,
Bateoaren bidez bere zikinetik garbituta,
uretik eta Espiritutik barriro sortu daiten
Jaungoikoaren ume barri.

**(Pazko-Zuzia uretan sartu: behin nahiz hiru bider)**

Jauna, zure Semearen bidez,
jatsi bedi ur guzti honetara
Espiritu santuaren indarra...

**Herriak:**

**(Pazko-zuzia uretan dala...)**

Bateoan Kristogaz hil eta hobiratuak,
beragaz biztu daitezela bizirako.
Jesukristo gure Jaunaren bitartez.
—**Amen**.




## Bedeinkapen-Otoitza

Jauna gure Jainkoa,
begira gaubela honetan batu dan zure herriari;
eta gure sortze harrigarria
eta gure salbatze harrigarriagoa
ospatzen doguzan gau honetan,
bedeinkatu † egizu ur hau.
Zeuk sortua da, lurrari bere erne-indarra emoteko
eta gure gorputzari garbitasuna ta atsegina.

Zure errukia emoteko bide ere egin dozu ura:
uraren bidez askatu zendun
zeure herria bere lokarrietatik,
eta basamortuan egarria kendu zeutson.
Uraren bidez erakutsi eben Profetek aurretiaz
zuk gizakiekaz jarri nahi zenduan itun barria.

Uraren bidez,
Kristok Jordan ibaian santu egin eban ezkero,
barriztatu dozu gure pekatari-izakerea,
jaiotza barria dakarren Bateoan.

Ur hau izan bedi gure Bateoaren oroigarri,
eta sartu gaizala
Pazkoetan bateatutako gure anai-arreben pozetan.
Jesukristo gure Jaunaren bitartez. —**Amen**.

## BATEO AGINTZARIAK BARRIZTATZEA

**Oharkizuna (Abadeak):**
Senide maiteok:
Pazko misterioaren bidez,
Kristogaz hil eta hobiratuak izan gara,
beragaz bizi barritan bizi izan gaitezan.
Horregaitik, Garizumako ekitaldiari azkena emotean,
Bateo santuan agindurikoak barriztatu daiguzan,

eta Satanasi eta haren egiteei uko eginez,
Eliza santu katolikuan
Jaungoikoaren jarraitzaile zintzo izango garela
berbea emon daigun.

Orain, ba:

*Abadeak*:
- Jainkoaren seme-alaben askatasunean bizi izateko,
uko egiten deutsozue pekatuari?
**_Bai, uko egiten deutsot_**.

*Abadeak*: - Pekatuak menperatu ez zaizen,
uko egiten deutsezue pekatu bide guztiei?
**_Bai, uko egiten deutset._**

*Abadeak*: - Uko egiten deutsozue
pekatuaren iturri eta nagusi den Satanasi?
**_Bai, uko egiten deutsot._**

* Sinisten dozue Jaungoikoa,
Aita ahalguztiduna, zeru-lurren egilea?
**_Bai, sinisten dot._**

* Sinisten dozue
haren Seme bakar Jesukristo gure Jauna,
Ama Birjinagandik jaioa,
nekaldu eta hobiratua,
biztu eta Aitaren eskoialdean jarririk dagoena?
**_Bai, sinisten dot._**

* Sinisten dozue Espiritu santua,
Eliza santu Katolikua, Santuen Alkartasuna,
pekatuen parkamena,
hilen biztuerea eta betiko bizitzea?
**_Bai, sinisten dot._**

Jaungoiko ahalguztidunak, Jesukristo gure Jaunaren Aitak,
uraren eta Espiritu santuaren bitartez jaiotza barria emon
eta pekatuak parkatu deuskuzanak,
berak gorde gaizala, Kristo gure Jaunagan, betiko bizitzarako.
—Amen.

**(Zipristintzea)**

*Bateoko uretan, Jauna, gaituzu*
*pekaturako hil ta zeuretzat biztu.*

*—Bateoagaitik, / eskerrik asko,*
*seme-alaba egin / gaituzulako.*

*—Bateoan ginan / hil Jesusegaz*
*geroztik gaitezan / bizi beragaz.*

edo (318)




R/. Jauna da nire Jaungoiko eta Salbatzaile lasai nago ni bildur gabe.

R/. Jainkoa da ta nire indarra ta kemena; bera salbatu ninduana.

(EDO...)




## *ESKARIAK*

† Senideok: harrigarria izan dogu Jainko Aita bere Semea, Jesus, bizterakoan. Bizitzearen zihurtasuna emon deusku horrela. Zuzendu deioguzan gure eskariak, berbizkundearen lekuko izan gaitezen:

—Eliz Amaren alde, eta beratan, gure Elizbarrutiaren alde: mundu honetan bizitzearen autorle zintzo lez jokatu daian, pobreenen ondoan egonez, **eskatu deiogun Jaunari**.

—Gizaki guztien alde, geure Gizartearen alde, eta batez ere gazteen alde: Jesus berbiztuagan aurkitu daien euren bizitzako benetako zentzua, eta horrela, beste lotura guztietatik askatu daitezan, **eskatu deiogun Jaunari.**

— Pozik ez daukenen alde, indarkeria jasaten daben alde, barru-bakerik aurkitzen ez dabenen alde: berbiztuaren argiak argitu daizan euren bizitzak, **eskatu deiogun Jaunari**.

—Hemen alkartu garen guztion alde: Pazko jai-poztasunez beterik, Kristo berbiztuaren barri emoteko lekuko gartsu izan gaitezan, eta Pazko-pozean bizi izan gaitezan, **eskatu deiogun Jaunari.**

—Bakotxak bere eskaria ere egin daigun une honetan (...)

† Jainko Jauna: geure eskuetan izten dozu Berbiztuaren hitza eta argitasuna zabaltzea; haren Espirituak suturik bizi izan gaitezela, ba, Jainko ta errege bizi da-ta, gizaldi ta gizaldietan. —Amen.

## EUKARISTIAREN LITURGIA

***Abadeak***
† Bedeinkatu zu, Jauna, zeru-lurren Jainkoa,
zeure esku zabaletik hartu doguz
orain ekarri deutsuguzan ogi-ardauok,
lurraren indarrak eta mahatsarenak
eta gizakiaren lanak sortuak:
honeexek egingo jakuz
betiko biziaren ogi
eta betiko zorionaren edari.

***Herriak***
— BEDEINKATUA ZU, JAUNA, ORAIN ETA BETI.

***Abadeak***
† Senideok, egin daigun otoitz guztiok batean,
Eliza osoaren oparia Jainkoari eskeintzerakoan.

***Herriak***
— JAINKOA GORESTEKO ETA GIZAKIAK SALBATZEKO

**Oparien gainekoa:**
Onartu, Jauna, zure herriaren otoitzak,
eskeintza honeekin batera;
Pazko-misterioetan hasi doguna,
zure indarrez, betiko bizitzarako
sendogarri izan dakigun. Jesukristo.
- Amen.

† Jauna zuekin........................................—Eta zure espirituarekin.
† Gora bihotzak! ....................................—Jaunagan daukaguz.
† Eskerrak Jaungoiko gure Jaunari..........—Egoki da eta zuzen.

Egoki da, bai eta zuzen
zu, Jaun hori beti gorestea,
baina poz handiagoz Kristo, gure Pazkoa,
hil eta eskeinia izan dan gau honetan.

Berau da munduko pekatua kendu dauan egiazko Bildotsa,
bere heriotzeaz gure heriotzea ezereztu
eta bere biztuereaz bizia barritu dauana.

Horregaitik, pazko-pozez gainezka dagoz
gizon-emakume guztiak mundu zabalean.
Zeruko indar eta aingeru guztiak ere
horregaitik dagoz beti
zure aintzaren gorespena kantatzen.

*Santu, Santu, Santua,*
*diran guztien Jainko Jauna.*
*Zeru-lurrak beterik daukaz zure diztirak.*
*Hosanna zeru goienetan!*
*Bedeinkatua Jaunaren izenean datorrena.*
*Hosanna zeru goienetan!*

## I Eukaristi otoitza, edo erromarra

***Eukaristi-Otoitzean tartekatu*:**

**Aintza, onespena zuri, Jauna!**

Zuri, beraz, Aita guztiz ona,
zure Seme Jesukristo gure Jaunaren bitartez,
apalik eskatzen deutsugu,

onartu ta † bedeinkatu daizuzala eskeintza garbiok.

Zure Eliza santu Katolikuaren alde
eskeintzen deutsuguz lehenengo:
emoiozu, mundu zabalean, bakea ta batasuna,
eta zaindu eizu bide zuzenean,
zure zerbitzari Franzisko, gure Aita Santuagaz,
Mario, gure Gotzainagaz,
eta Apostoluen siniste katolikua
osorik zaintzen daben beste guztiekaz.

Gogoan izan, Jauna,
guk gogoan doguzan... zure seme-alabak,
eta hemen diran guztiak:
ezagutzen dozu honeen sinisten zintzoa.

Danon izenean eskeintzen deutsugu
gorespenezko opari hau,
eta eurek ere eskeintzen deutsue
bai eurentzat, bai euren artekoentzat,
pekatuen parkamenerako
eta itxaroten daben gorputz-arimen osasunerako;
horretarako egiten deutsuez euren otoitzak
Zuri, betiko Jaungoiko bizi ta egiazko horri.

Guztiok bat eginik, *gau* santua ospatzen dogu,
Jesukristo gure Jauna bere gorputzean biztu zanekoa;
eta aitatzen eta goresten doguz:
lehenengo, Andra Maria beti Birjina dohatsua,
gure Jaun eta Jaungoiko Jesukristoren Ama,
eta beronen senar Jose santua,
baita zure apostolu ta martiri dohatsu:
Pedro ta Paulo, Andres, eta zure santu guztiak;
euron irabaziz eta otoitzez emoiguzu,
non-nahi eta beti, zure indarra eta laguntza.

Hona hemen, Jauna, zure zerbitzarien
eta zure herri guztiaren eskeintza:

***(bateaturik izan bada...)***
*uraz eta Espiritu santuaz barriro sortu dozuzan*
*eta pekatu guztien parkamena emon deutsezun*
*honeentzat egiten deutsugu batez ere;*

Onartu eizu beraz;
eratu zure bakean gure egunak,
betiko heriotzatik atara,
eta hartu gaizuz zure aukeratuen artean.

Bedeinkatu, Jauna, eskeintza hau;
eta zuretzat on eta atsegingarri egizu,
eta guretzat izan dedila
zure Seme maite Jesukristo gure Jaunaren gorputz eta odol.

Berak, gu eta gizon-emakume guztiak salbatzeko,
hil bezperan, bere esku santuetan ogia hartu,
eta begiak zerura jasorik,
bere Aita Jaungoiko ahalguztidun horrengana,
zuri eskerrak emonez, bedeinkatu eban,
zatitu eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE TA JAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE GORPUTZA DA-TA
ZUENTZAT EMONGO DANA.

Afal ondoan, bardin,
bere esku santuetan kaliza baliotsu hau harturik,
barriz ere zuri eskerrak emonez, bedeinkatu eban
eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE ETA EDAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE ODOLAREN KALIZA DA-TA,
ITUN BARRI ETA BETIKOAREN ODOLA,
ZUENTZAT ETA GUZTIENTZAT
PEKATUAK PARKATZEKO ISURIKO DANA.
EGIZUE HAU NEURE OROIGARRI.

***Hau da sinismenaren mistertioa***

*—Hil eta biztu zarala, Jauna,*
*zu barriz etorri arte hau dogu hau barri ona.*

Horregaitik, Jauna, gogoratuz guk, zure zerbitzariok,
eta zure herri santu honek,
zure Seme Jesukristo gure Jaunaren Nekaldi dohatsua,
hilen artetik biztea, eta zeruratze miragarria,
eskeintzen deutsugu zuri, Jaungoiko handi horri
zeuk emondako dohaietatik,
opari garbia, opari santua, opari errubakoa,
betiko biziaren ogi santua eta betiko zorionaren kaliza.

Hartu eizuz begi on eta argiz:
halan hartu zenduzan Abel zure zerbitzari zintzoaren doaiak,
eta Abrahan gure Aitaren oparia,
eta Melkisedek zure abade nagusiaren eskeintza santu ta errugabea.

Apalik eskatzen deutsugu, Jaungoiko ahalguztiduna:
zure aingeru santuak eroan daizala zeruko altarara,
Jaun handi horren aurrera;
altara honetatik zure Semearen gorputz-odol santuak
hartzen doguzan guztiok
zeruko ondasunez eta graziaz bete gaitezan.

**Gogoan izan, Jauna, sinistearen ezaugarriagaz joan eta orain bakezko lotan diran zure seme-alabak: I...**

**Euroi eta Kristogan atseden daben guztiei emon, Jauna, zeruan poza, argia ta bakea.**

Geuri ere, zure bihotz onean sinistea dogun pekatarioi,
iguzu leku zure apostolu eta martiri santuen artean:
Joan Bateatzailea, Esteban, Matias eta Bernabe,
eta zure santu guztien artean;
iguzu ez guk mereziari begiratuz,
Zu parkatzaile zaralako baino.

Jesukristo gure Jaunaren bitartez.
Beronen bitartez, Jauna,
beti gauza on guztiak egiten dozuz,
santutzen, biziazoten, bedeinkatzen eta guri emoten.

Honen bitartez, honekin eta honengan,
Zuri, Aita Jaungoiko ahalguztidun horri,
Espiritu santuarekin batean,
ospe eta aintza guztia
gizaldi eta gizaldi guztietan.
—Amen.

† Salbatzaileak agindu ta irakatsiari jarraituz, bildur barik esan dagigun:

Gure Aita...

† Atara gagizuz, Jauna, gatx guztietatik; emoiguzu bakea gure egunotan, zure errukiari esker pekatutik garbi bizi izan gaitezan eta estualdietan sendo. Betiko zorionaren itxaropenean Jesukristo gure Salbatzailea noiz etorriko dan zain gagozela.

—Zeurea dozu erregetza, zeureak ospe ta indarra orain eta beti.
† Jesukristo gure Jauna, zeuk esana da Apostoluei: Bakea izten deutsuet, neure bakea emoten. Begira zure Elizearen sinismenari eta ez gure pekatuei eta zeure gogoa danez, emoiozu Elizeari bakea, emon batasuna, errege bizi zarata. Gizaldi ta gizaldietan.
—Amen.

† Jaunaren bakea beti zuekin.
—Eta zure espirituarekin.

† *Emoiozue bakea alkarri.*

† Hona hemen Jaungoikoaren Bildotsa;
hona munduko pekatua kentzen dauana.
Zoriontsuak honen mahaira deituak.

—Jauna, ni ez naz inor
zu nire etxean sartzeko,
baina esaizu hitz bat eta osatuko naz.

---

## Jaunartze ondorengo otoitza:

*Egin daigun otoitz*

Isuri eizu, Jauna, zure maitasun-Espiritua:
Pazko-sakramentuz ase gaituzunok
zure maitasunean bat egin gaizuzan. Jesukristo.
—Amen.

## *Oharrak...*

### Onespen ospetsua:

† Jauna zuekin
—Eta zure espiritualarekin

Bedeinkatu zaizela Jainko ahalguztidunak
Pazko-jai handi honetan,
eta zaindu erruki handiz
pekatu-bide guztietatik.
Amen
Bere Semearen biztuereaz
bizi-barritu zaituen Jainkoak
emon deizuela betiko biziaren saria.
Amen

Jaunaren Nekaldiko egunak amaitu ondoren
Pazko-Jaia ospatzen dozuenok,
haren laguntzaz heldu zaitezela
zeruan betiko Pazko-jaietara.
Amen
Bedeinkatu zaizela Jaungoiko ahalguztidunak:
Aitak eta Semeak † eta Espiritu santuak.
Amen

**Agurra, abestuz:**




**Zoaze Jaunaren bakean, aleluia, aleluia.**

Eskerrak Jainkoari, aleluia, aleluia.

# Abestiak

**Jesus, munduko argia.**
Jesus, zinezko egia.
Jesus, betiko bizia.

*Jesus, Jainko gizona,*
*zuri gure bizia;*
*hartu, gure Jaun ona,*
*gu garean guztia.*

*Gure bihotz barruan*
*biztu zure argia;*
*gaitezan gu munduan*
*argi Jainkoz betia.*

**Kanta Jaunari, lur guztia / Egin gogotik haren nahia.**

**Jauna, zure maitasuna / abestuko dot, betiren-beti.**

**Lur osoa, egiozu irrintzi Jainkoari.**

**Biztu zaigu gure Jauna / biztu gu salbatzeko**
**gu ere biztuko gara / berarekin betiko** (*bir*): **beti-betiko.**

Gau ilunak ez gaitu gu bildurtzen
badatorrelako eguna;
gorrotoak ez gaitu gu bultzatzen
badogulako maitasuna.

**Gure ondoan, Jauna,** egon zaitez beti:
zu zara gure bide eta gure bizi.

Zu zara, Jauna, zu gure Artzain
eta gu zure artalde;
nora-ezean ibilten gara
ardi gaixook zu gabe (bir).

Zuk ezagutzen gaituzu danok,
zu zara gure Artzain On;
zure ondoan alkar maitatuz
gaitezela beti egon (bir).

**Bai, eskerrak emon zeru-lurretan**
eskerrak emon Jainkoari
guztietan deusku-ta on egin guri.
Eskerrak emon zeru-lurretan.
Eskerrak Jainkoari menderen-mendeetan.

**R/. Bizi da Jauna, bizi da!**
**Bizi da Jauna, bizi da!**
**Bizi da, bizi da, bizi da Jauna,**
**bizi da gure artean!** (bir)

Pazko goizean hutsik dago hilo-bia.
Biztu da Kristo, biztu, gure eguzkia:
nagusi da argia! R/.

Ilunpetatik berak gu atara gaitu;
munduaren distira berak dau barritu:
berak gaitu biztu. R/.

Zeru-lurren Erregina: aleluia!, aleluia!
Biztu jaku Jesus Jauna: Aleluia!

—Zuregandik sortu dana: Aleluia.
Hilobitik biztu da-ta: Aleluia!

—Otoitz zure Semeari: Aleluia!
bizia deigun danori: Aleluia!

Hallelujah-Händel: http://wso.williams.edu/cpdl/sound/hand-hal.mid